# <u>OHARRA</u>

Gobernu espainolak euskal preso politikooi zuzendutako egitasmo berritua aurkeztu du. Euskal Herritik, nazioartetik eta baita Espainiatik ere espetxe politikan urratsak eman ditzan eskaera zabalari itzuri egin nahi dio. Hau dela eta ohar honen bidez, lehen gogoeta ezagutzera ematera gatoz:

1-Euskal presook sistema penitentziarioaren helburu eta eskubide orokorren hartzaile gisa onartzen gaitu. Izaera politikoa izanagatik ere.

2-Euskal presoon kontrako estrategia politiko berezitua, eta ondorioz tratamendu berezitua (eta kolektiboa) inposatzen zaigula onartzen du: hala eskubide eta onura penitentziarioak lortzeko ezartzen zaizkigun baldintza eta exijentzia maila altuagoak, nola klasifikazio penitentziarioaren eta sakabanaketa beraren diskrezionalitatea.

3-Damuketa-salaketarako ‘Langraitzeko bidea’ deitutakoaren porrot politikoa onartzen da.

Bere horretan esanguratsua, orain arte arduragabeki ukatua izan baita.

Aldiz, biziarteko zigorra eta honenbestez espetxe politika bera indartzera heldu den Espainiako Auzitegi Konstituzionaleko erabaki politikoaren ondotik jakinarazi izana, esanguratsua ere bada. Gauzak horrela, irakurketa osatzera gatoz:

4-Ez dio erantzuten euskal jendarteak gehiengo zabalaz hamaika aldiz eskatzen dionari: espetxe politika errotik aldatu eta aukera politiko berrien argitara egokitzea. Izan ere, euskal presoon eskubideak ezagutzeko baldintza eta xantaiaren politikaren haritik jarraitzen baitu.

5-Salbuespeneko neurriak indargabetu behar dira. Muturreko egoerekin eta sakabanaketarekin amaitu beharra dago (istripuek asteburuoroko errealitatea erakutsi bezala), eskubideak oro bermatu eta baldintza demokratikoen baitan presoon kaleratzea ahalbidetzen hasi.

6-Aurreko egitasmo ankerrekin bezala, damuketa-salaketa oinarri duen edonolako ‘programa’ hilda eta antzu jaioko da. Presio eta xantaia oro baztertuta ordea, EPPKk urratsak emateko prestutasuna adierazten du, azken garaietako adierazpenen ildotik eta eztabaidaren ondorioak plazaratu zain.

Amnistia eta Autodeterminazioa !

2012ko maiatzean